# Bagilaren 1. zapatuan: San Blas



## Sarrera-Abestia

**GOAZEN ALKARTURIK** biztuta fedea
argitan zabalik maitasun bidea.

[1] Entzun dezagun apaltasunez
entzun dezagun Jaunaren hitza
Bere hitzetan gure egia
gure indarra gure bizia.

[2] Gurekin dogu maisu ta lagun
gurekin dogu, gurekin, Jauna!
Egin dezagun zuzentasunez
ta maitasunez bere esana!

**Erantzun salmoa** (Sal 71 [70], 8-9. 14-15b. 16-17. 22 (R/. ik. 15a))

♩ = 80 Ps 070 Udaia'15

Ni - re a - ho - ak i - ra - ga - rri - ko dau, Jau - na, zu - re sal - ba - me - na.

**R/. Nire ahoak iragarriko dau, Jauna, zure salbamena.**

Zure gorespenaz betea neban **a**hoa,
zure egintza ospetsuaz, egun **o**soan.

Ez baztertu ni orain zahar**tza**roan,
ez itzi ni eskutik, indarrak ahuldu jataza**ne**an. R/.
Nik, ostera, itxaroten jarraituko **dot** beti,
gero eta gehiago zaitut go**ra**tuko.
Nire ahoak egun osoan iraga**rri**ko dau
zure salbazino-asmoa eta -e**gin**tza. R/.

Jainko Jaunaren egintza bikainak ditut aldarri**ka**tuko,
zurea bakarrik dan salbazinoa ira**ga**rriko.
Ene Jainko, gaztetatik irakatsi **deus**tazu,
eta gaur arte iragarri ditut zure egintza harriga**rri**ak. R/.

Eta nik be harpa-soinuz goratu**ko** zaitut,
ene Jainko, leiala za**ra**lako,
zitaraz kantatuko deutsut, oi Israelgo **San**tu. R/.

## Jaunartzean

Hemen gaituzu, Jauna, ogiaren eske,
bizi behar honetan ahuldu bait gintezke.
Zure gorputz santua hartu nahi genduke:
zu barik bizitzerik ezingo genduke.

Munduak behar badau eguzki-argia,
mendiko abereak, iturri garbia;
gu danok nahi badogu barruko bizia
beharrezkoa jaku zeruko ogia.

Jauna, zure grazia lagun dakigula,
ogi hau jan dagigun behar dan bezela;
Ez ahaztu txarrerako jarriak gaozela:
arren, zuzen ta leial bizi gaitezela.

## Amaiera agurra

**Kanta Jaunari** kantu barri,
kanta guztiok herriz-herri,

Gora Jainkoa zeruetan,
goratu danok eleizetan,
goratu baita aingeruek

kanta Jaunaren izenari,
mundu guztia poz-kantari.

eta goratu lurrekoek.